

# Inariko samiera

**Inariera** edo **Inariko samiera** (*Anarâškielâ*) Finlandiako Inari udalerri eta inguruetan hitz egiten den sami hizkuntza bat da. 250 bat inaritar hiztun ditu 2005. urtean egin zen azterketaren arabera, baina hiztun hauek, gehienetan, finlandiera edo iparraldeko samiera dakitenez, egunerokoan ez dute komunikatzeko ia erabiltzen [1]. Hizkuntza hau, elur-orein zaintzan ibiltzen diren samitar gutxi batzuk baino ez dute erabiltzen eta ez denez ofiziala eta araugilerik ez duenez, galtzeko arrisku bizian dago UNESCOren Liburu Gorriaren arabera [2]. Ez da eskoletan ikasten eta umeei ez zaie irakasten; nahiz eta, literatura tradizio apur bat duen (hala nola, 1906. urtean Biblia itzuli zen), iparraldeko samierarekin duen antzekotasunak kalte egin dio. Hiztun gehien dituen eta ofiziala den samiera bakarra denez, gainontzeko familia honetako hizkuntzek gainbehera sakona jasan dute azkenaldian, hain artean **inariera**k. Hala ere, Finlandian nahiko ezaguna den Amoc raperoak, **inariera**z abesten du, azkeneko hats dotorea eman nahi baitio hizkuntzari [3].

| Inariera | |
|---|---|
| anarâškielâ | |



Finlandiako Inari udalerrian bizi diren samitarren %16ak.

| Datu orokorrak | |
|---|---|
| **Lurralde eremua** | Finlandia |
| **Hiztunak** | ~300 |
| **Ofizialtasuna** | Inari udalerrian |
| **Eskualdea** | Inari, Lappi |
| **UNESCO sailkapena** | 4 larriki arriskuan |
| **Araugilea** | Ez du |
| | **Hizkuntza familia** |

## Eduki-taula


- **Historia**
- **Kokapen geografikoa**
- **Grafia**
- **Gramatika**
  - Aditza
  - Izeordaina
  - Kasua
- **Kanpo estekak**
- **Erreferentziak**


## Historia

1859. urtean argitaratu zen Anar sämi kiela aapis kirje ja doctor Martti Lutherus Ucca katkismus liburua izan zen **inariera**z idatzi zen lehen liburua. Edvard Wilhelm Borg idazleak **inariera**z idatzi eta itzuli zuen lehen liburu hau.

Hala ere, 1906. urtean itzuli zen Bibliaz gain, oso gutxi idatzi da hizkuntza honetan eta batez ere, hizkuntzalariek idatzi dute **inariera**ri buruz. Nahiz eta, samitarren kultura bultzatzeko Finlandiako Samitarren Parlamentua osatu zen 1973. urtean, bultzada txikia izan zuen hizkuntzak.

1986ean Anarâškielâ servi (*Inarieraren Elkartea*) sortu zen hizkuntza sustatzen helburuaz. Elkarte honek, hala nola, liburutxoak eta egutegiak idatzi eta hizkuntza irakasteko 3-6 urte bitarteko haurrentzako gela bat ireki zuen. Belaunaldi berriei erakusteko nahi honi esker, Mikkâl Morottaja raperoak, gaur egun, **inariera**z abesten ditu bere abestiak.

1992. urtean, aldiz, Inari, Finlandiako udalerri elelaudun bakarra bihurtu zen eta **inariera** udalerriko hizkuntza ofiziala bilakatu zen, finlandiera, iparraldeko samiera eta skolterarekin batera. Hala ere, biztanleriaren %5ak baino gutxiago daki **inariera**z, nahiz eta, ofizialak diren gainontzeko samierekin gutxiengo elkar-ulertze bat dagoen.

| | |
|---|---|
| giza hizkuntza<br>uraldar hizkuntzak<br>Fino-permiar hizkuntzak<br>Fino-volgaitar hizkuntzak<br>hizkuntza fino-samiak<br>samiera<br>Eastern Sami languages (en) | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Kasu gramatikalak** | nominatibo, genitibo, akusatibo, lokatibo, ilatibo, komitatibo, abesibo, esibo eta partitibo |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-2** | smn |
| **ISO 639-3** | smn |
| **Ethnologue** | smn (http://www.ethnologue.com/language/smn) |
| **Glottolog** | inar1241 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/inar1241) |
| **Wikipedia** | smn (https://smn.wikipedia.org) |

## Kokapen geografikoa

Inariko herrixka hauetan entzuten da **inariera** gehien:

- Aksujärvi (Ákšujávri)
- Iijärvi (Ijjávri)
- Inari (Aanaar)
- Ivalo (Avveel)
- Kaamanen (Kaamâs)
- Menesjärvi (Menišjávri)
- Nellim (Njellim)
- Partakko (Päärtih)
- Repojoki (Riemâšjuuhâ)
- Sevettijärvi (Čevetjávri)
- Syysjärvi (Čovčjávri)
- Tirro (Mosshâš)

## Grafia

**Inariera** idazteko Latindar alfabetoaren bertsio zabal bat erabiltzen da:

| | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|
| A a | (Â â) | B b | C c | Č č | D d | Đ đ | E e |
| F f | G g | H h | I i | J j | K k | L l | M m |
| N n | O o | P p | R r | S s | Š š | T t | U u |
| V v | Y y | Z z | Ž ž | Ä ä | (Á á) | | |

## Gramatika

## Aditza

- **Pertsona**
- Lehen pertsona
- Bigarren pertsona
- Hirugarren pertsona

- **Modua**
- Aginetera
- Baldintzazkoa
- Hautazkoa
- Indikatiboa
- Potentziala

- **Zenbakia**
- Singularra
- Duala
- Plurala

## Izeordaina

Izenordainean pertsona mota hauek aurkitu daitezke. Ondorengo taulan kasu nominatibo eta genitibo/akusatiboan:

| | Euskaraz | Nominatiboa | Euskaraz | Genitiboa |
|---|---|---|---|---|
| Lehen pertsona (singularra) | **ni** | mun | **nire** | muu |
| Bigarren pertsona (singularra) | **hi/zu** | tun | **hire/zure** | tuu |
| Hirugarren pertsona (singularra) | **hura** | sun | **haren** | suu |
| Lehen pertsona (duala) | **gu (bi)** | muoi | **gure** | munnuu |
| Bigarren pertsona (duala) | **zuek (bi)** | tuoi | **zuen** | tunnuu |
| Hirugarren pertsona (duala) | **haiek (bi)** | suoi | **haien** | sunnuu |
| Lehen pertsona (plurala) | **gu** | mij | **gure** | mii |
| Bigarren pertsona (plurala) | **zuek** | tij | **zuen** | tii |
| Hirugarren pertsona (plurala) | **haiek** | sij | **haien** | sii |

Kasuen taula:

| | Singularra | Duala | Plurala |
|---|---|---|---|
| Abesiboa | muuttáá | munnuuttáá | miitttáá |
| Esiboa | munen | munnun | minen |
| Genitibo-Akusatiboa | muu | munnuu | mii |
| Ilatiboa | munjin | munnui | mijjân |
| Komitatiboa | muuin, muin | munnuin, munnuuin | miiguim |
| Lokatiboa | must, muste | munnust | mist, miste |
| Nominatiboa | mun | muoi | mij |
| Partitiboa | muđe | munnud? | miđe? |



**Inariera** zazpigarren zenbakia.

## Kasua

**Inariera**k bederatzi kasu dauzka, nahiz eta, askotan, genitiboa eta akusatiboa berdinak diren.

- Abesiboa
- Akusatiboa
- Esiboa
- Genitiboa
- Ilatiboa
- Komitatiboa
- Lokatiboa
- Nominatiboa
- Partitiboa

Partitiboa bakarrik singularrean agertzen da eta, finlandieran ez bezala, **inariera**n ez da erabiltzen objektuetan aditz iragankorrekin.

# Kanpo estekak

- Hiztegi txiki bat (http://www.uta.fi/~km56049/same/inarinsaame.html)
- Inarierazko grabazioa (http://www.helsinki.fi/~sugl_smi/aani/Kielinaytteet/Inarinsaame.MP3)
- Inariera bizirik mantentzeko klip-a (http://video.helsinki.fi/Media-arkisto/inarin_saamelaiset.html)

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q33462 · **Identifikadoreak** · GND: 4267619-8 (https://d-nb.info/gnd/4267619-8) · LCCN: sh89004858 (https://id.loc.gov/authorities/sh89004858) |

# Erreferentziak


1. ↑ Ethnologue (http://www.ethnologue.com/show_language.asp?code=smn)
2. ↑ Liburu Gorria (http://www.unesco.org/culture/ich/index.php?lg=EN&pg=00136)
3. ↑ Amoc (http://www.int2000.net/?act=error&code=5)


| Uraldar hizkuntzak | |
|---|---|
| **Finikoak** | Estoniera (võroera) • Finlandiera (savoniera, kvena, meänkielia) • Ingriera • Kareliera (livviera, ludiera) • Livoniera • Vepsiera • Voteera |
| **Samierak** | *Akkalera* • Hegoaldeko samiera • Inariera • Ipar samiera • *Kemiera* • Kildinera • Luleera • Pitera • Skoltera • Terrera • Umeera |
| **Mordoviarrak** | Erziera • Mokxera |
| **Mariera** | Larreetako mariera • Mendietako mariera |
| **Permiarrak** | Komiera (ziriera, permera, jazvera) • Udmurtera |
| **Ugriarrak** | Hungariera • Khantiera • Mansiera |
| **Samoiedoak** | Enetsera • *Juratsera* • Nenetsera (basoko nenetsera, tundrako nenetsera) • Nganasanera • *Kamasiera* • *Matorrera* • Selkupera |
| **Beste batzuk** | *Mextxeriera* • *Meriera* • *Muromiera* |

*Letra etzanez:* hizkuntza hilak. (Parentesi artean: parentesiaren ezkerrean dagoen hizkuntzaren dialektoak.)

